# AITA ARREN SEMEAI.



Goacen, goacen, mutillac,
Goacen Africará,
Moroac jaquin dezan
Gu ere an gueralá.
Bayonet zorrotzaquin
Sartu beretará,
Ecarri bear degu
Marroqui banderá.

---

Tercio euscaldunac
Chit mutill azcarrac,
Ez ditu garaituco
Moroen indarrac.
Gustiz beroac dira
Euscaldun odolac,
Icaratuco ez ditu
Chistu balarenac.

---

Euscaldun gende noble
Paregabecoac,
Valiente eta prestu
Gaiñ gañetacoac
Doai au eman cigun
Gure Jaungoicoac,
Pruebac emanac daude
Gueren gurasoac.

---

Legorrez eta ichasoz
Euscaldun gendeac
Daude oraiñ eta len
Gloriaz beteac.
Oquendo ta Churruca
Eta Otalorac
Guerrariac cirala
Badirade pruebac.

---

Lenagocoac ecen
Oraingo mutillac,
Ez dira escasago
Bay ayen berdiñac.
Honore andia dute,
Gorputza liraña;
Moro casta gustia
Ez da orien diña.

---

Isabel bigarrena,
Gure Erreguiña,
Euscaldunac dizute
Biotzetic griña.
Onen defensaraco
Eguiñ aleguiñac,
Naiz campoan guelditu
Luce, luce, illac.

---